# Abenduaren 6an
# San Nikolas, gotzaina

Eleiz artzainen (gotzainarentzat, 968. or.) Betikotik.

**Sarerera-oharra**

Egun on guztioi, eta ondo etorri san Nikolas Gotzainaren omenez ospatuko dogun Eukaristia honetara.

Hartu daigun gogoan: arduratzeko egunak bizi doguz (Errusia eta Ukraina gerran, baita Israel eta Palestina ere, beste batzuen artean; gure eleiz-bidea maldan behera; gure seme-alaba-lobak Eleizatik eta sinismenetik aldenduta…). Baina guk Eukaristia ospatu gura dogu, gure aurretikoak eta hildakoak gogoan izanik. Guztiontzat izan daitela onuragarri.

**Sarrera-abestia**

**ZEIN GOZO TA EDER DAN** anaiok alkartu
eta danok batera Jainkoa goratu.

[1] *Gora bihotzak eta guztiok egin kantu*
*Jainkoak bere eskuz salbatuko gaitu.*

[2] *Zabal gogoak Jaunaren hitza entzuteko*
*bere nahia jakinik zuzen ibilteko.*

† Aitaren eta Semearen eta Espiritu santuaren izenean.
—Amen.
† Gu salbatzera datorren Jauna izan bedi zuekin.
—Eta zure espirituarekin.

**Damu-otoitza**

Geurekoiegiak gara eta kexu bizi gara itxiak garalako. Zabaldu deioguzan ateak Jainkoaren errukiari:

—Jesus Jauna, Jainko Aitak ondasunez bete gaitula dinoskuzuna, *erruki, Jauna*.

—Jesus Jauna, zure bizitza ondasunak partekatzen emon zenduana, *Kristo, erruki*.

—Geurekoi, hotz eta bildurti aurkitzen gaituzuna, *erruki, Jauna*.

**OTOITZA**

Jauna, zure errukiari dei egiten deutsagu ahuspez:
Nikolas gotzain santuaren otoitzari esker,

zaindu gaizuz arrisku guztietatik,
salbazinorako bidea zabalik aurkitu daigun.
Zure Seme Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez,
Zurekin eta Espiritu Santuarekin batean
Jainko eta errege bizi da-eta gizaldi eta gizaldietan.

**Irakurgaia**

Ba ete dakigu zelango ondasunen jabe garan? Espiritu-bizitza behar da horretarako, eta barru-bizitza lantzea. Begira ze gomendio egiten deuskun apostoluak.

*Gai egiten ditu fededunak euren zerbitzu-lanerako*
*eta Kristoren gorputza eraikitzeko.*

**San Paulo Apostoluak Efesoarrei egindako epistolatik** Ef 4, 1-7. 11-13

Senideok: bizi zaitezela hartu dozuen bokazinoari dagokionez. Izan beti apal, Nik, Jaunagaitik preso nagoan honek, eskatzen deutsuet, otzan eta jasankor, alkar maitekiro eroanez. Ahalegindu zaiteze Espirituak sortzen dauan batasunari eusten, bakearen lokarriz.

Bat bakarra da gorputza eta bat bakarra Espiritua, Jainkoak egin deutsuen deiari dagokion itxaropena be bat bakarra dan lez. Bat bakarra Jauna, bat bakarra sinismena, bat bakarra Bateoa; bat bakarra guztien Jainkoa eta Aita, guztien gainetik dagoana, guztien bidez diharduana eta guztiengan bizi dana.

Gutariko bakotxak Kristok emon nahi izan deutson neurrian hartu dau dohaia. Berak apostolu egin ebazan batzuk, beste batzuk profeta, beste batzuk Barri Onaren iragarle, beste batzuk artzain eta irakasle; holan gai egiten ditu fededunak euren zerbitzu-lanerako eta Kristoren gorputza eraikitzeko, harik eta guztiok Jainkoaren Semearen sinismen eta ezagutza berbera izatera heldu arte, heldutasun beteko pertsona, Kristoren betetasunaren neurriko pertsona, izatera heldu arte.

Jaunak esan

**Erantzun salmoa** (Sal 23 [22], 1-3. 4. 5. 6 (R/. 1))

Deslai gabilz, bakotxa bere arduretan galduta, eta kexati. Artzain on bat behar dogu.

**R/. Jauna dot artzain, ez naz ezeren beharrean.**

Jauna dot artzain, ez naz ezeren beharrean;

larre gurietan etzunazoten nau,
ur-bazter nasaira eroaten eta indarrak deustaz barritzen;
bide segurutik naroa, bere izenari ohore eginez. R/.

Ibar baltz ilunean banabil be,
ez naz gatxaren bildur,
Zu nigaz zagoz-eta;
zure artzain-makilak nasaitzen nau. R/.

Mahaia atontzen deustazu
arerioen begi-bistan;
orioz igurzten deustazu burua,
gainezka dot edontzia. R/.

Zoriona eta maitasuna ditut lagun,
bizitzako egun guztietan,
eta Jaunaren etxean biziko naz
amaibako egunetan. R/.

Mt 23, 9b. 10b

R/. **Aleluia**.
V/. Bakarra da zuen Aita, zerukoa
eta bakarra zuen gidaria, Kristo. R/.

**Ebanjelioa**

Egingo bageutso jaramon Jesusi, handikeria barik bizi izango ginateke, alkarren errespetuz eta alkarren laguntzan. Egin deiogun harrerea Aleluia abestuz, zutunik.

*Zuetako handiena izan bedi zuen zerbitzari.*

**† Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik** (Mt 23, 8-12)

Aldi haretan, Jesusek hauxe esan eutsen bere ikasleei: Zuek, ostera, ez itzi inori “maisu” deitzen, ze bakarra da zuen maisua, eta zuek guztiok alkarren senide zarie. Eta ez deitu lurrean inori haretan, Jesusek hauxe esan eutsen bere ikasleei: Zuek, “aita”, ze bakarra da zuen Aita, zerukoa. Eta ez itzi inori “gidari” deitzen be, ze bakarra da zuen gidaria, Kristo.

Zuetariko handiena izan bedi zuen zerbitzari. Bere burua goratzen dauana beheratu egingo dau Jainkoak, eta bere burua beheratzen dauana goratu».

Jaunak esana

**HERRI-OTOITZA (ESKARIAK)**

Eskariak ez dira guk gura eta ezin doguna Jainkoak egin daian, harek ze egintzetara bialtzen gaituan gogoratu eta indar hartzeko baino:

—Eleizearen alde: gaurkotzen ahalegindu daiten, eta pobreak bere altzoan hartzen, *eskatzen deutsugu, Jauna*.
—Behartsuek euren aldarria entzuna aurkitu daien beharrizanetatik urten ahal izateko, *eskatzen deutsugu, Jauna*.
—Hildako gure senideak gogoratuz, gure sinismena bizkortu dagigun otoitzera hurreratuz, *eskatzen deutsugu, Jauna*.
—Eukaristiarako alkartu garanok beharrizanetara zabalik bizi izan gaitezan, euretan gure ahalmenak garatuz, *eskatzen deutsugu, Jauna*.

Jainko Aita: beti aurkitzen gaituzu eskale eta kexati. Emoiguzu, gugan ezarri dozuzan ahalmenak garatzea, zerbitzari izanik pozik bizi izateko. Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez.
—Amen.

**Oparien gainekoa**

Begira, Jauna, bihotz onez
Nikolas gotzain santuaren jaia ospatzeko
altarara ekarri deutsugun eskeintzari:
ekarri deigula guri parkamena
eta emon deizula Zuri gorespena.
Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez.

## ELEIZ ARTZAIN SANTUEN PREFAZIOA

Jauna zuekin — Eta zure espirituarekin
Gora bihotzak. — Jaunagan daukaguz.
Eskerrak Jaungoiko gure Jaunari. — Egoki da eta zuzen.

Egoki da, bai, eta zuzen, bidezko eta salbagarri,
nonahi eta beti guk Zuri eskerrak emotea,
Jauna, Aita guztiz santu,
Jainko ahalguztidun betiko horri,
Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez.

Poza emoten deutsazu zeure Eleizari
Nikolas santuaren jaia ospatzean,
indar barria haren bizitzaren jokabideaz,

argia eta irakaspena haren hitzez,
baita laguntza ere haren otoitzez.

Horregaitik, aingeru eta santuekin batean,
beti eta beti
[esaten] abesten deutsugu gorazarre hau:

**SANTU, SANTU, SANTUA…**

**Eukaristi-Otoitza II**

Santu zara, bai, Jauna, eta santutasun guztiaren iturri.
Santu egizuz, ba, ogi ta ardao honeik,
zeure Espiritua isuriz,
Jesukristo gure Jaunaren
Gorputz † eta Odol egin daitezan guretzat.
Berak, saldu ebenean, eta bere gogoz kurutzera joiala,
ogia hartu eta eskerrak emonez,
zatitu eban, eta bere ikasleei emon eutsen, esanez:

*Hartu eizue ta jan guztiok honetatik:*
*hau neure gorputza da-ta,*
*zuentzat emongo dana.*

Afal-ondoan bardin, kaliza harturik,
barriz ere eskerrak emonez,
bere ikasleei emon eutsen, esanez:

*Hartu eizue ta edan guztiok honetatik:*
*hau neure odolaren kaliza da-ta,*
*itun barri ta betikoaren odola,*
*zuentzat eta guztientzat*
*pekatuak parkatzeko isuriko dana.*
*Egizue hau neure oroigarri...*

**V./ Hau da sinismenaren misterioa.**

*R./ Hil eta biztu zarala, Jauna,*
*zu barriz etorri arte*
*hau dogu hau Barri Ona.*

Horregaitik, Jauna,
zure Semearen heriotzea ta biztuerea gogoratuz,
biziaren ogia ta salbamenaren kaliza
eskeintzen deutsuguz,
zuri eskerrak emonaz
altaran zure zerbitzari onartu gaituzulako.
Eta apalik eskatzen deutsugu,
Kristoren gorputz-odolak hartzen doguzanok
Espiritu santuak bat egin gaizala.
Gogoan izan, Jauna,
mundu guztian zabaldurik dagoen zure Elizea;
eroaizu maitasun osora,
Franzisko, gure aita santuagaz, Joseba gure gotzainagaz
eta eliz gizon-emakume guztiekaz batean.

Gogoan izan, Jauna,
bizteko itxaropenean joan diren: I... (egunekoak)
eta gure etxeko, senide eta hildako guztiak:
hartu eizuz zure aurpegiaren argitan.

Erruki zakiguz, arren, guk guztiok
betiko bizitzea jaritsi daigun,
Jaungoikoaren Ama Maria dohatsuarekin,
Apostolu santuekin, Martin santuarekin
eta gizaldi guztietan,
zure adiskide izan diran santuekin;
eurekin batean goratu zaiguzan.
Jesukristo zure Semearen bitartez.]

HONEN BITARTEZ, HONEKIN ETA HONENGAN
ZURI, AITA, JAUNGOIKO AHALGUZTIDUN HORRI
ESPIRITU SANTUAREKIN BATEAN
OSPE TA AINTZA GUZTIA GIZALDI TA GIZALDI GUZTIETAN.
—Amen.

Salbatzaileak agindu ta irakatsiari jarraituz
bildur barik esan dagigun.

**GURE AITA** zeruetan zarana
santu izan bedi zure izena,
etor bedi zure erreinua,
egin bedi zure nahia
egun hontako ogia;
parkatu gure zorrak
geuk ere gure zordunei
parkatzen deutsegun ezkero;

zeruan bezela lurrean ere.
Emoiguzu gaur

eta ez gu tentaldira eroan,
baina atara gagizuz gatxetik.

† Atara gagizuz, Jauna, gatx guztietatik,
emoiguzu bakea gure egunotan,
zure errukiari esker pekatutik gabi bizi izan gaitezan
eta estualdietan sendo;
betiko zorionaren itxaropenean,
Jesukristo gure Salbatzailea
noiz etorriko dan zain gagozela.
*—Zeurea dozu erregetza; zeureak ospe ta indarra orain eta beti.*

**BAKE ESKEINTZEA** (Abadeak)
† Jesukristo gure Jauna, zeuk esana da apostoluei 'bakea izten deutsuet, neure bakea emoten'; begira zure Elizearen sinismenari eta ez gure pekatuei, eta zeure gogoa denez, emoiozu elizeari bakea, emon batasuna, errege bizi zara-ta, gizaldi eta gizaldietan.
*—Amen.*

† Jaunaren bakea beti zuekin
*—Eta zure espirituarekin.*

† Emon deiogun bakea alkarri.

Jaungoikoaren Bildotsa, zeuk kentzen dozu munduko pekatua:
*Erruki, Jauna.*
Jaungoikoaren Bildotsa, zeuk kentzen dozu munduko pekatua:
*Erruki, Jauna.*
Jaungoikoaren Bildotsa, zeuk kentzen dozu munduko pekatua:
*emoiguzu bakea*

**JAUNARTZEA**
† Hona hemen Jainkoaren Bildotsa, hona munduko pekatua kentzen dauana: zoriontsuak honen mahaira deituak:

—Jauna, ni ez naz inor zu nire etxean sartzeko,
baina esaizu hitz bat eta osatuko naz.

**JAUNARTZEAN**
**HONA BILDOTS EZTIA** egiazko ogia

zerutik da jatsia Jainko maitia.

*[1] Gure Artzain ona ta Egilea*
*Aitarik maiteena, zeru-emoilea.*

*[2] Hostian zaozala dogu sinisten*
*zeruan bezela hor gu maitatzen.*

*[3] Maitatuko zaitut orain lurrean*
*gero maitatzeko zeru ederrean.*

*[4] Zinez gurtzen zaitut Jesus maitea*
*arren emoidazu goi-sinistea.*

**JAUNARTZE ONDORENGOA**
Sakramentu santu honek indarbarriturik, Jauna,
apalik otoitz egiten deutsugu:
Nikolas gotzain santuaren ikasbideak eraginik,
ahalegindu gaitezala harek sinistu ebana autortzen
eta harek irakatsi ebana bizi izaten.
Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez.

**Azken agurra**
Ospatu dogunetik, hauxe ikasi dogu: besteengandik hartzean baino poz eta zorion handiagoa aurkitu geikela geuretik emonez. Eskertu daigun, ba, gaur hartuko doguzan zerbitzuak, eta ahalegindu gaitezan ondokoaren laguntzan. Alkar zoriontzeko gauza izan gaitezala.

**Azken onespena**

† Jauna zuekin.
*- Eta zure espirituarekin*

† Bedeinka ta gorde gaizala Jainko ahalguztidunak:
Aitak eta Semeak eta Espiritu Santuak.
*- Amen*.

**Azken abestia**

**ESKERRIK ASKO, JAUNA** bihotz-bihotzetik

Eskerrik asko Jauna, orain eta beti.

> [1] *Eskerrik asko, Jauna, gugan zaudelako*
> *eta zure biziaz bizi garelako.*
> [2] *Zure antzera, Jauna, gaitezela ibili*
> *zure antzera, Jauna, on eginez beti.*

† Zoaze Jaunaren bakean.
—Eskerrak Jainkoari.

